

# BOR-BOR(K) 2016/17

---

Beldurrak?
Bai, eta zer!




# Beldurrak? Bai, eta zer!



**Beldurrak? Bai, eta zer!**
2018ko maiatza

BOR BOR (K)
HERRI JAKINTZEN LABORATEGIA

L.G. SS-500-2018




# Hitzaurrea

Aurrean daukazun dokumentu hau geldo baina mimoz hainbat lagunen artean osatutakoa da eta bertan Bor-Bor(k)-ko 2016/2017ko ikasturteko hainbat esperientzia biltzen ditugu. Luzea eta mardula izanda, guk *"txostenguapoa"* deitzen genion, izan ere, katxondeoan osatzen gindoazen heinean, kontziente izan baikara esaten ditugun gauzetako askok bati baina gehiagori barrenak mugituko dizkiola, eta honetarako umorea baliatu dugu. Ez da gure asmoa lurrikara bat sortzea, Herri Mugimenduetarako euskarri baliagarri bat sortzea baizik.

Ikastaroko gaitegiaz gain, beldurretan jarri genuen begirada Bor-Bor(k)-ko kideak hainbat asteburutako gogoetetan. Beldurra. Nork ez du halakorik sentitu inoiz? Eta Herri Mugimenduei dagokionean, konturatzen al gara zenbatetan bizitzen ditugun hauek banaka, taldeka, proiektu ezberdinetan? Prest gaude hauei aurrez-aurre begiratzeko? Beldurren marasman murgildu, korapiloak askatu, logikak ulertu eta bideak iluntasunetik argirantz eramateko? Hori izan zen gure erronka eta azken asmoa dokumentu hau osatzerako garaian; elkarren artean gogoetatutako hori gure sentimendu antzekoak zituztenentzat erabilgarria izatea, eta honela jakintzak gehitzen eta anitzago bilakatzen joatea.

Beraz, *txosten guapo* honetan, lehenik gure ikastaroko prozesua azalduko dizugu, zertarako egin genuen lapiko arteko lan hau, zer den esperientzien sistematizazioa, nola landu genuen gaia eta zeintzuk izan diren egin ditugun hausnarketa eta aurkikuntza nagusiekin amaituko dugu. Ea baliagarria zaizun eta denon artean sukalde hau pixka bat hauspotzen dugun.

On egin!



# 1. blokea: ezagutzen

## 1.1 Bor-Bor(k) herri jakintzen laborategia zer da

### Oinez hasi aurreko pausuak

Joxemi Zumalabe Fundazioak, azken urteotan Euskal Herrian zehar prozesu parte hartzaile ugaritan bide-lagun eta laguntzaile gisa egindako bidean, pausu bat aurrera egin eta herri mugimenduekin eta herri mugimenduentzat formazio politikorako egitasmo bat sortzearen ideia garatu zuen duela urte gutxi batzuk.

Ilusio eta zalantza handiekin, urte beteko eztabaida, jardunaldi eta bilera mordoxka baten ostean, Bor-Bor(K) Herri Jakintzen Laborategia izeneko proiektua sortu zen. Eta proposamen honen baitan hasi zen ikastaroaren lehen esperientzia, 2015-2016ko ikasturtean burututako prozesuan gorpuztu zena, eta bigarrena 2016-2017 ikasturtean. Esku artean duzun dokumentua laborategiaren baitako ikastarotik sortua bada ere, esan beharra dago fundazioak ikastarotik haratago hainbat eremutan lan egiteko asmo finkoa duela. Gaur egun honela banatuta dago laborategiko lana:

- **Pil-Pilean.** Herri mugimenduetan gaur egun pil-pilean dauden gaiak jorratzen ditugun *ikastaroa* duzue. Lehen Bor-Bor(K) deitzen bagenion ere, laborategiko esparru ezberdinetatik bereizi asmoz egun Pil-Pilean izena dauka ikastaroak. Alde batetik, antolakuntza, funtzionamendua eta bestetik, aliantzak, zapalkuntzak eta alternatiba askatzaileak lantzen ditugu. 2017-2018ko ikastaroa hirugarren edizioa da, momentuz azkena dena, eta guztira 43 kidek osatzen dugu.

- **Biltokia.** Ikastaroetan zein Zumalaberen beste esparruetan, erabili eta sortu ditugun material, dinamika eta bestelako

erremintak jendarteratzeko dugun erreminta *kutxa birtuala* da. Sukaldatzerakoan beharrezko diren osagaiak eskura jartzen dituen espazio txukuna, pixkana osatuz doana.

- **Gatza eta Perrexila.** Dinamizazio lanak duten garrantzia eta talde dinamikei eskaintzen dioten ekarpena azpimarratzekoa da, kondimentua edota espezien funtzioa lukete jakiak zapore goxoa izan dezaten. Herri mugimenduetan honetan barne formakuntza beharra sumatu dugunez, prozesu berri bat abiatu berri dugu *dinamizazio ikastaroa* diseinatzeko. Ikastaroaren lehenengo edizioa 2019an labetik ateratzea espero dugu.

- **Murtxikatuz.** Ekintza oso garrantzitsua liseritze on bat egiteko. Momentu honetan, herri mugimenduekin formazio kritiko eta askatzailea lantzen ari diren eragileekin harremanetan ari gara Euskal Herrian dauden *formakuntza politikoaren mapa* egin eta elkarrekin gogoetatzeko.

## Zer da Bor-Bor(K) ikastaroa?

Elkar ezagutza, topaleku eta herri esperientzien sozializazio gune eta une bat proposatzen du Bor-Bor(K)-k. Formazio prozesu integralaren bitartez, parte hartzailea, intersekzionala eta berritzailea bere horretan, herri mugimenduetatik eta herri mugimenduentzat sortutako ezagutza askatzaileen eraikuntza kolektiboan datza.

Ardatz pedagogiko gisara, batetik herri hezkuntza/pedagogia askatzailea hartzen du kontuan, Herri Mugimendua delarik prozesuaren protagonista; eta bestetik, intersekzionalitateen ikuspegia, hots, zapalkuntza anitzei aurre egiteko, hierarkia eta fragmentazioaren logika gainditzea, eta hau dena euskaraz egiten du, hizkuntzak berebiziko garrantzia duenaren jabe baikara. Ikastaroak helburu zehatz hauek ditu, besteak beste:

- Borroka ugariak aitortzea, ikasketa eta aliantza berrien espazio-sarea osatze aldera.
- Beste praktika pedagogiko askatzaileak berreratzea, mugimenduekin eta mugimenduentzat.
- Nolakotasunari garrantzia emango dion formazio proiektu bat eratzea, prozesuak eta metodologiak zainduko dituena.

## Ikastaroan erabilitako metodologia

Nola edo nolakotasuna garrantzitsua dela diogunean, prozesuak emaitzak bezain garrantzitsuak direlako da: Bor-Bor(K)-aren abiapuntua metodologia hautu politikoa dela da.

Proiektu honen metodologiaren ezaugarrien artean, bere izaera dinamikoa azpimarratu daiteke, horizontala eta parte hartzailea, hasieratik bukaeraraino:

- Prozesu erakoa txikitik gehiagora doalako, helburu handirik gabe, pausu erreal eta posibleak emanez.
- Kritikoa eta askatzailea, pentsatzeko, izendatzeko eta egiteko forma berriak arakatzen dituelako, behar kolektiboen beharrei erantzunez, eraldaketa sozialaren markoan.
- Aurre-figuratiboa, prozesu kolektibo gisa hemen eta orain hastea eta beste eskenatoki, praktika, sentitze eta harremanak izateko forma batzuk aurreratzeko aukera eskaintzen duelako.
- Sortzailea eta berritzailea, erregistro eta lengoaia ugari darabiltzalako; hitzak, isiltasunak, gorputza, mugimendua, jolasa, jaia, maila artistikoa.
- Intersekzionala, zapalkuntza ezberdinak elkarlotuta daudela kontutan hartzen delako.
- Multidimentsionala, teoria eta praktika uztartzen dituelako, gorputza eta ideiak, afektuak eta kontzeptuak, publikoa eta pribatua, emozioak eta arrazoia.
- Lankidetzan oinarritua eta txandakakoa, kudeaketa kolektiboa eta arduratsua oinarri, ikastaroa antolatzeko oinarrizko beharrei erantzunez.
- Deszentralizatua.
- Bizipenetan oinarrituta, bizikidetzan eta subjektibotasun artekotasunean, ideiak gorputzetatik pasa direlako, elkarrizketa eta elkarrekin egin eta egotearen bidez.

## Formatua, egitura eta maiztasuna

Ikastaroaren bi edizioak bost aurrez-aurreko saiotan garatu ziren Euskal Herriko lurralde ezberdinetan. Saio hauek ostiraletik igandera bitartean eginez, bertan gauzatu behar ziren kontu guztien ardura ikastaroko parte hartzaileek banatzen zituztelarik[1].

Asteburu bakoitzean hausnarketa ideologikoa eta bizikidetzari lotutako dimentsio ezberdinak lantzeko (denak maila berean garrantzitsuak) momentu formalak, informalak, harremanak zaintzekoak zein ondo pasatzekoak uztartu ziren.

Ikastaroaren itxiera saioan prozesuaren ibilbidearen balorazioa eta bizi izandakoaren berreraikuntza egin zen, berau politizatu eta hausnarketak ateraz, sistematizazio honetarako zein etorkizuneko ikastaroetarako baliagarri izango diren elementu eta ondorio nagusiak ateraz.

Ikastaroaren egiturari dagokionez, lau lan-talde ezberdinez gain, berauetan ere parte hartzen zuen Bilgune Politiko Pedagogikoa (BPP) zegoen, Joxemi Zumalabeko kideez osatua, ikastaroaren koordinazio lanak egiteko. Ikastaroaren eta edukien koordinazioa, prestaketa eta jarraipena egiteaz gain, azpiegitura fisiko eta digitalen kudeaketaz arduratzen zen. Kide bakoitzak lau lantaldeetako batean parte hartuaz. Maiztasun iraunkorrez lan egiten zuen BPPk, gainerako lan taldeekin etengabeko harremanetan, esan liteke prozesuaren zaintzaren ardura izan zuela.

Lan taldeek (bizi lekuaren arabera banatuak) asteburu bakoitzerako ardurak txandakatzen zituzten, honela izendatuak:

- Zaintza ardura: asteburuko azpiegitura eta goxotasunaz arduratuko zen taldea (segurtasun txoko bat atontzeaz, otordu-etarako erosketak egiteaz…), finean, dinamikak garatzeko gune, bero, eroso eta atsegina izateaz arduratzen zen.
- Gogoeta ardura: asteburuko dinamikak antolatu eta hauen dinamizazioaz arduratuko zen taldea.
- Sistematizazio ardura: denen artean adosturiko sistematizazio ardatzaren baitako erregistroak hartu eta analizatzeko ardura izango zuen taldea[2].
- Patxada eta patxanga ardura: harrera eta agur ekimenez nahiz esnatze dinamikez gain, gaubeletako ekintzak ere antolatzen zituen taldea.

## Ikastaroaren gaitegia

Sarrerarekin amaitzeko ikastaroan jorraturiko gaitegia plazaratzea garrantzitsutzat jotzen genuen, aurretik esandako dena praktikoki

1 2016/2017ko saioak burutu dira: Errekaleor auzo okupatua (Araba), Beizama (Gipuzkoa), Gernikako Astra (Bizkaia), Goñiko Euskal Udalekua (Nafarroa) eta GaraiOngo Sorgingunea (Araba).

2 Hobe ulertzeko ikus dokumentu honen 1.2 puntua: Prozesuaren azalpena.

nola jorratu genuen ikusteko lagungarria delakoan gaudelako. 2 bloketan banatu zen, eta bakoitzean 6 gai planteatu ziren asteburu bakoitzean lehenengo bi eta bigarreneko beste bi jorratu zirelarik.

### 1. Blokea: Antolakuntza, funtzionamendua eta aliantzak

- Arlo pertsonala eta kolektiboa militantzian. Barne aniztasunaren jabekuntza, konpromiso eta erritmo ezberdinak; rol banaketak eta nahi gabeko espezializazioak (lan ezkutuak eta prestigiotsuak…), guzti honek proiektu politikoarekin duen harremana…
- Talde izaera eta talde lana. Ahalduntze pertsonala eta kolektiboa; lidergo partekatua (horizontaltasuna) eta hierarkia ezkutuak (bertikaltasuna); harrera eta taldekide bilakatze prozesuak…
- Norbanakoa, talde eta proiektu politikoaren zaintza. Hiru dimentsio horien arteko oreka.
- Parte hartze orekatuaren dinamizazioa. Bilerak antolatzeko eta dinamizatzeko metodologiak; lanaren planifikazioa.
- Mugimenduen arteko harremanak eta artikulazioa. Saretzea eta sarean modu eraginkorrean lan egitea.
- Herri mugimenduak eta erakunde publikoak. Aurkakotasuna, elkarlana eta elkar-eragina.

### 2. Blokea: Zapalkuntzen egungo mekanismoak eta alternatiba askatzaileak

- Pentsamendu bakarra/hegemonikoa vs ikuspegi kritikoa eta formazio politikoa.
- Kolore ezberdinetako betaurrekoak jantzi. Ikuspegi aniztasunetik begirada kritikoak lantzeko tresnak.
- Koiuntura azterketak eta hausnarketa estrategikoak egiteko giltzak.
- Zapalkuntza anizkoitzen funtzionamendua elkar-harremanetan landuz: Kapitalismo neoliberal, klase zapalkuntza eta natura suntsiketa; Patriarkatua, genero eta sexu zapalkuntzak; Kolonialismoa, nazio eta kultur zapalkuntzak; Helduen boterea eta nagusien zapalkuntza…
- Zapalkuntzak barneratzeko eta azalarazteko formak egunerokotasunean. Intersekzionalitatearen potentzialtasunak eta mugak landu.
- Proposamen askatzaileak kontraesanen eta koherentzien kudeaketa praktika kolektiboak. Nazioartean zein EHan sortu diren zein sortzen ari diren alternatiba ezberdinak.








## 1.2 Sistematizazio prozesuaren azalpena

### Zer da esperientzien sistematizazioa?

Aurreko edizioan egin bezala, 2016-2017ko Bor-Bor(k)ko ikastaroan esperientzien sistematizazioari eutsi eta gai bat hartu eta ikasturtean zehar era transbertsal batean lantzeko hautua egin zen. Baina zer demontre zen esperientzien sistematizazioa deitzen zioten hori? Ikastaroko partaideetatik gutxik zuten honen berri, eta ez zen erraza izan BPPko kideentzat berau talde osoari azaltzea.

Lehen azalpenak jasota, momentu batean sistematizatuko genuen hori ikastaroko gairik garrantzitsuena izango zela zirudienez, bakoitzak beretzat edo bere mugimenduarentzat garrantzitsuena zen hori ikertu nahi izan zuen. Baina gaia menperatzen zutenen lan txukunari esker, joan ginen pixkanaka konturatzen esperientzien sistematizazioaren bidez gai zehatz batean fokua jarri eta beste era batean landuko zela hau. Hau da, asteburuetan ez ginen aukeratuko genuen gai horretan zentratuko, gai hau noiz eta nola ateratzen zen aztertzen egongo zen lan talde bat asteburu guztietan (1.1 puntuan esan bezala sistematizazio ardura duen taldea deitzen zena). Azken asteburuan siste talde guztien lanketaren ondoren, dinamizazioaz arduratuko zen gogoeta lan taldeak gai konkretu horren inguruan hausnartzeko asteburua prestatu behar zuen: sistematizazio ardatzaren inguruan gogoetatzeko asteburua.

Orain emandako azalpen hau xumea izanik, goazen ikustera gaian adituek nola definitzen duten eta zer dioten esperientzien sistematizazioaz:

> *La sistematización es aquella interpretación crítica de una o varias experiencias que, a partir de su ordenamiento y reconstrucción, descubre o explicita la lógica del proceso vivido en ellas: los diversos factores que intervinieron, cómo se relacionaron entre sí y por qué lo hicieron de ese modo.* ***La Sistematización de Experiencias produce conocimientos y aprendizajes significativos que posibilitan apropiarse de los sentidos de las experiencias, comprenderlas teóricamente y orientarlas hacia el futuro con una perspectiva transformadora***[3].
> (Oscar Jara Holliday, 2011)
> [Letra negrita geurea da].

3 Oscar Jara Holliday (2011) "Orientaciones teórico-prácticas para la sistematización de experiencias" *Centro de Estudios y Publicaciones Alforja*. SAREAN: http://centroderecursos.alboan.org/ebooks/0000/0788/6_JAR_ORI.pdf

Zertarako egiten den planteatzeako garaian aipaturiko autoreak honako hau diosku:

1. *Para comprender más profundamente nuestras experiencias y así poder mejorarlas. (Nos permite descubrir aciertos, errores, formas de superar obstáculos y dificultades o equivocaciones repetidas, de tal forma que los tomamos en cuenta para el futuro).*
2. *Para intercambiar y compartir nuestros aprendizajes con otras experiencias similares. (Nos permite ir más allá de un intercambio anecdótico, haciéndolo mucho más cualitativo).*
3. *Para contribuir a la reflexión teórica con conocimientos surgidos directamente de las experiencias. (Nos permite aportar un primer nivel de teorización que ayude a vincular la práctica con la teoría).*
4. *Para incidir en políticas y planes a partir de aprendizajes concretos que provienen de experiencias reales. (Nos permite formular propuestas de mayor alcance basadas en lo que sucede en el terreno).*




Oscar Jara Hollidayren sistematizazio prozesuaren azalpen grafikoa (dokumentuaren autoreek euskaratua)

Esperientzien Sistematizazioa, beraz, gertatutakoa modu ordenatuan berreraikiz, bizi izandako praktika baten baitako gogoeta indibidual eta kolektibo gisa definitu dezakegu. Are gehiago, jakintza askatzailea sortuz, esperientzia bati buruzko begirada kritikoak eragiten eta pentsamendu kolektiboa eraikitzen duen prozesua dela esango genuke. Esperientziei buruzko ikaspen kritikoak ateratzea eta jakintza berriak sortzea ahalbidetzen digun ikerkuntza sozialeko metodologia, alegia.

Hori horrela izanik, esperientzien sistematizazioak, ezagutza zientifikoa eta jakintzen ohiko produkzio zein zirkulazio moduak eraldatzeko erronkarekin parez pare jartzen gaituela ulertzen dugu.

## 2016/2017 ikasturteko ardatzaren aukeraketa

Sistematizazio ardatza definitzeko arratsaldea aktibazio jolas batekin hasi zuten dinamizatzaileek, eguna energiaz hasteko asmoz. Honen ostean lehenago aipaturiko esperientzien sistematizazioaren inguruko azalpen teorikoa eman zuten BPPko bi kidek, beraren oinarria ulerrarazi eta bertan murgiltzeko gogoak pizteko asmoz.

Gomendatzen den bezala (O. Jara Holliday,2011), prozesua norbanakotik hasi zen, kide bakoitzari txantiloi bat eman zitzaion, eta bertan gogoetarako gonbidapen bat egiten zen. Helburua ikasturte horretako Bor-Bor(k)-n geundenon eta bakoitzaren kolektiboetako behar eta espektatibetatik abiatuz, elkarren artean esperientzien sistematizaziorako ardatz bat definitzea zen. Normala den bezala gai ezberdinak atera ziren talde txikietan, baina azken buruan denen artean adostasun bat bilatu zen boterearen zirkuluaren dinamikaren bidez. Bertan talde bakoitzak bere ardatzak azaldu zituen eta eztabaida emankor baten ostean, helburu komun batera iritsi zen taldea, esan daiteke herri mugimenduetan ematen diren beldurrak lantzeko erabakira. Zehazki siste galdera honela definitu zen:

> **Sistematizazio ardatza:** zer esaten digu BorBor(K)k herri mugimenduetan, kidea, taldea eta proiektuaren dimentsioetan ageri diren beldur eta ezinegon politikoez? Eta berauek gainditzeko estrategiez?

Galdera hartzen badugu, ohartuko gara atal eta puntu ezberdinak identifikatu ditzakegula, eta horiek oinarri, siste zereginak zituen talde bakoitzak asteburuz asteburu hauetako bakoitzean jarri zuen arreta, betiere aurreko taldeak egindako lana kontuan hartuta. Behaketarako orduan, hiru dimentsioetan jarri genuen arreta. Niaren, Taldearen eta Proiektu Politikoaren arteko oreka bilatuz.




## Sistematizazio lanak asteburuz asteburu

Gauzak honela, lehen asteburuan Ratamomoek ***herri mugimenduetan ematen diren beldur ohikoenen zerrenda edo glosario bat egin zuten***. Bigarren asteburuan Labezomorro Arroxek ***berauek gainditzeko estrategietan jarri zuten fokua***. Hirugarren asteburuan, AKK-47ko taldekoek ***proiektu politikoari sortarazten zaizkion beldurrak identifikatu nahi izan zituzten***. Eta azken asteburuan Mikorrizek (gogoeta taldeak sistematizazio ardatza landu behar zuenez), aktak hartu zituzten. Gogoeta taldea Labezomorro arroxena izan zen, eta larunbat osoa beldurren gaia lantzeko erabili zuten (ikus 1. eranskina asteburuetako lan eta hausnarketak era zabalago batean jasotzeko).

## Honela planteatu zuten Labezomorro arroxek larunbata, siste ardatza lantzeko eguna ikastaroko azken asteburuan:

Siste galdera betiere gogoan izanda, taldeak larunbata dedikatu zuen beldurren gaia lantzeko. Beldurrak norberatik abiatzen direla kontuan izanik, introspekzio ariketa bat egitea ezinbestekotzat jotzen zuten, eta bizipenetatik abiatu zuten asteburua. Beldurraz hitz egin behar bagenuen, zertaz aritu behar ginen? Norberak bere buruarengan bizitzen zituen horietatik abiatu, zer sentitu, nola aurre egin eta abarren inguruan hausnartzea berebizikoa ikusten zuten dinamizatzaileek, soilik honela izango ginelako gai norbanakoez osatuta dagoen taldean gertatzen diren fenomenoak aztertzeko.

Honetarako hainbat euskarriz baliaturik, goiz emankorra izan zuen talde handiak, teoria, poesia, alde artistikoa nahiz umorearen erabilera eginez. Arratsaldean esperimentu bat eta honen inguruko gogoeta teorikoaren bidez taldeetan ematen diren hainbat fenomenotan jarri zen arreta, eta modu batean edo bestean beldurren inguruan daukagun mamu horrek forma hartzen zuela sentitu genuen, logika bati erantzuten diola, eta nola edo hala, zenbaitetan eta ez beti, aurre egiteko estrategiak garatzen joan gaitezkeela.



# 2. blokea: korapilatzen

## 2.1 Ardatzaren azalpena

### Zer da beldurra

Beldurrak, eta haiek gainditzeko estrategiak aztertzeko argitu beharrekoa da beldurren nondik norakoa. Harluxet hiztegi entziklopedikoak eskaintzen duen deskribapenak begirada biologikoa du: benetako nahiz ustezko arrisku baten aurrean sortzen den urduritasun edo kezka-egoera (Harluxet hiztegi entziklopedikoa, web gunea[4]). Beraz, hiztegiaren arabera zera esan genezake, gure gorputzek bizirauteko duten tresna edota erreakzioa da. Hari esker irauten dugu bizirik. Hori dela eta, beldurrari esker ditugun jokabide batzuk ez ohikoak dira, esaterako, korrikaldi luzeak zein oihu hotzak.

*Los que trabajan tienen miedo deperder el trabajo.*

*Los que no trabajan tienen miedo de no encontrar nunca trabajo.*

*Quien no tiene miedo al hambre, tiene miedo a la comida.*

*Los automovilistas tienen miedo de caminar y los peatones tienen miedo de ser atropellados.*

*La democracia tiene miedo de recordar y el lenguaje miedo de decir.*

*Los civiles tienen miedo a los militares, los militares tienen miedo a la falta de armas, las armas tienen miedo a la falta de guerras.*

*Es el tiempo del miedo.*

*Miedo de la mujer a la violencia del hombre y miedo del hombre a la mujer sin miedo.*

---

4 Harluxet Hiztegi Entziklopedikoa, web gunea. "Beldur" hitzaren bilekate. Helbidea: http://www1.euskadi.net/harluxet/. Azkenekoz ikusia: 2018-II-18

*Miedo a los ladrones, miedo a la policía.*

*Miedo a la puerta sin cerradura, al tiempo sin relojes, al niño sin televisión, miedo a la noche sin pastillas para dormir y miedo al día sin pastillas para despertar.*

*Miedo a la multitud, miedo a la soledad, miedo a lo que fue y a lo que puede ser, miedo de morir, miedo de vivir…*

(Eduardo Galeanoren beldurraren inguruko olerkia, Bor-Bor(k) kideei borobilean zeudela altuan irakurritakoa)

## Beldurra geure hitzetan

Beldurraz ari garenean arriskuaz ere ari gara, dimentsio ezberdinetako arriskuei buruz. Konfiantza eta segurtasuna galtzeaz ere ari gara, esaterako, besteen onarpena edo maitasuna galtzeko arriskuaz eta horren ondorioz animikoki ahulezia sentitzeaz.

*Es una respuesta logica, coherente, ante la percepcion de una violencia latente en nuestro día a día.Y tambien nos preocupa tener el miedo tan naturalizado que a veces ni siquiera lo percibamos.*
(29. orria, La madeja 2017)

Beldurra sentitzerako orduan burua eta gorputzaren arteko talka gertatzen da. Zenbateraino dira sentimenduak eraikiak? Kolektiboki bizi ditzakegu aurretik esandakoagatik, baina azken finean Ni-tik abiatuta nola azaleratzen ditugu horiek?

Beldurrak ez dira berdin gorputzen. Pribilegioek esaterako badute zer esana beldurretan. Aldi berean, beldur kolektiboak testuinguru eta identitate sozialen araberakoak direnez, tokian tokiko beldurrak konpartituak izango dira hala ez. Beraz, beldurra dinamikoa da, transformagarria.

## Beldurretik panikora

Beldurraren aterkipean, antsietate eta angustia prozesuetan, sortzen da panikoa: bat-bateko ikara etenezina. Fenomeno hori ikuspegi biologikoaren arabera erreakzio ez-egokitua da.

Demagun su hartu duen gela itxi batean gaudela. Egokitutako erreakzioak honako hauek dira: su-itzalgailua hartu eta sua itzali, trapuren bat busti eta ahoa eta sudurra estaliz bertatik atera… Ez egokitutako erreakzioan, aldiz, nahasgarriagoa denez, arazoari konponbidea bilatu beharrean, beldurrak gain hartzearen ondorioz, ideia berari bueltaka aritzeko arriskua dago. Eta honek badu arrisku handi bat: oso sentimendu kutsakorra dela.







Kasuak kasu, heriotza iritsi denaren ustean, edota beldurraren sentimenduan zirimolatuz gero, geldirik geratu eta kiskalita hiltzeko aukera handitzen da. Bizipen hau talde ikuspegira eramanda, panikoaren mekanismoa ezagutu eta identifikatzen ikasteak berebiziko garrantzia du mugimendu sozialetan; era horretan taldearen esku gera baitaiteke panikoaren zirimola etetea, beti ere ekintzen aniztasuna present edukiz eta aurreikuspenak eginez.

## Desirez beldur

Kapitalismoak desioekin eta beste sentimenduekin jolasten du; desioak pertsona betetzen ez duen arren, betetzeko proposamena egiten dio. Nola? "Berezko" (ezer berezkorik balitz) desioak lapurtuz eta manipulatuz.

Desioen desitxuratze hori ez da nahikoa, ordea, beldurrak beste era batera ulertu gabe. Horregatik, bizitzaren aurkako erasoek, beldurrei izaera politikoa hustu eta indibidualizatu egiten ditu. Bizitza eredu aberats kapitalista desiraraziz, bestelako ereduen beldur bihurtzen du pertsona. Aukera hutsala bada ere, berau galtzearen beldurra hain da handia, ezen… men egin beharra sentitzen dugun.

*El miedo es una emoción adaptativa construida socialmente, pero también una emoción que es instrumentalizada y utilizada como estrategia política de control social.*
(20. orria, La madeja 2017)

Beraz, baliteke bizi garen sistema osoa ulertu ahal izateko tresna izatea beldurraren ikerketa. Izan ere, beldurrei buruz hitz eginez, zapaltzen gaituzten sistemak irudikatu ahalko genituzke. Bestalde La Madeja aldizkarian gaiaren inguruan irakurtzen genbiltzala, Eduardo Galeanoren aipu honek ere zer pentsatua eman digu:

*"Hay criminales que proclaman tan campantes 'la maté porque era mía', así no más, como si fuera cosa de sentido común y justo de toda justicia y derecho de propiedad privada, que hace al hombre dueño de la mujer. Pero ninguno, ninguno, ni el más macho de los supermachos tiene la valentía de confesar 'la maté por miedo', porque al fin y al cabo el miedo de la mujer a la violencia del hombre es el espejo del miedo del hombre a la mujer sin miedo".*
(Eduardo Galeano).

## Nia/Taldea/Proiektua zergatik aldagai?

Gogora dezagun, ordea, beldurren definizioak hamaika direla, nork bere bizipenen arabera eraikitako hamaika. Ezin, bada, eraikitako ikarak eraisteko beldur horiek baino estrategia

gutxiago izan, ala? Gogora dezagun, aldi berean, beldurrek badutela biltzen Taldearen eta Proiektuaren aldagaia bere baitan. Ezin, bada, Niaren dimentsiotik abiatutako estrategiak besterik eraiki, ala?

Zaintza hirukoitzaren muina oreka da. Nia, Taldea eta Proiektuaren arteko oreka. Oreka hau hartu dugu beldurren hausnarketarako abiapuntutzat. Izan ere, beldurrak pertsonetan gorpuzten diren arren, Nia, Taldea zein Proiektuan eragin dezakete. Hori dela eta, hirukiko erpin horietatik abiatu daitezke beldurrei aurre egiteko estrategiak.

Beldurrak bizitzeko moduak pertsonaren araberakoak diren arren, gehienetan Taldera eta Proiektura salto egiten dute; hots, beldurra kolektibizatzen da. Izan ere, Nia, Taldea eta Proiektuaren artean lotura sakonak daude. Beraz, beldurrei aurre egiteko garatu beharreko estrategiek ere lotura sakon horiek barne izan behar dituzte.

Hiru dimentsioen lotura sakonetatik abiatzen garen arren, dimentsio horien identitate aniztasuna nabarmendu beharreko ezaugarria da. Izan ere, eragile bati buruz ari garenean, Niak pertsonari egiten dio erreferentzia, baina aliantzei buruz ari garenean ordea, Taldeari. Eragilearen kasuan, Taldea proiektu politiko bera borrokatzen duten pertsona antolatuek osatzen dute; aliantzetan, ordea, taldea talde aliatuen ordezkariek edo talde aliatuek osa dezakete. Nia beraz, testuinguruaren arabera aldatuz doala ikusi dugu.



## 2.2 Beldurren izendatzea/multzokatzea: errepikatu direnak, orokorrak, espezifikoak...

Jarraian batu eta ordenatu ditugun beldurrak ikastaroko 1, 2 zein 3. asteburuan jasotakoetatik eratorriak dira.

Lehen azpiatala definitzeko, lehenengoa zen Beizamako asteburuan definitu zituzten beldurrak hartu genituen oinarri modura, aliantzei begira Goñin, hirugarrenean, behatutako beldurrak batuz.

Ostera, bigarren azpiatalean, Goñin egindako dinamika batekin, aurrez jasotako beldurrak sailkatzeko ahalegina egin dugu. Kasu honetan, beldur hauek zein norabidetatik datozen, edota, non kokatzen diren landu nahi izan dugu, behin eta berriz aipatu ditugun hiru dimentsioetatik (Nitik, Taldetik edo Proiektu politikotik) gertuago edo urrunago dauden definituz.

Lanketa hau, hirugarren azpiatalean aipatzen dugun triangeluaren dinamikaren bitartez zehazten da, eta beldurrari aurre egiteko estrategiak ze dimentsiotan koka genitzakeen lantzeko ere lagungarri izan daiteke.

Orokorrean, beldur ugari agertu zaizkigu eta gehienak fisikoak ez direnez, ez dira definitzen errazak, eta non sortu diren edo nola eragiten diguten jakitea are konplexuagoa bihurtzen da. Prozesuan agertutako beldur guztiak biltzen saiatu gara, horretarako sailkapen diferenteak proposatuz; agian, gure beldurra batean, edo bitan, edo guztietan egongo da; espero dugu denak bilduta egotea. Beldur bat ez baita garrantzitsuagoa jende gehiagok edo gehiagotan bizi dugulako; momentu konkretuan bizi izan dugulako baizik. Izan ere, beldurren arteko hierarkizazioa ekidin nahi izan dugu, horrela momenturen batean bizi izanari berari garrantzia aitortuz.

"Gure ondorioa da, beldurrez bizi garela", hori uste genuen askok, izendatu ditzagun bada gerora aurre egin ahal izateko.

### 2.2.1 Zeri diogu beldurra?

Ikastaroan Norbanako, Talde eta Proiektu politikoetan bizi izandako beldurrak azaleratu eta antolatu nahi izan ditugu. Horretarako sortua izan da atal hau, bertan laburbiltzen saiatu gara gure prozesuan landu genituen beldur nagusiak:

#### › Desadostasunari beldurra

Autokontentzio eta autozentsurarako joera dugu, **disensurako beldurraren** ondorioz politikoki zuzenak izateko joera areagotuz. **Besteak zapaltzeari beldurra** ere badiogu eta beraz, *"Zapaltzailea ez izateko"* tresna beharra sumatzen dugu segurtasun ezari eta beldur honi aurre egiteko.

Honekin batera **gatazkei beldurra** ere aipa genezake. Gatazkak politizatzeko ezintasuna eta pertsonalizatzeko joera, egoki kokatu eta aukera gisara ikusteko ezintasuna nabarmenduz. Gatazka jendea galtzearekin edo desagertzearekin lotzeko joera ere izaten dugu.

Beldur honetan ere, politikoki zuzenak izateko edota gure ideiak besteen ideien azpitik kokatzeko joera azaleratzen da (segurtasun eza, espektatibak, gaizki aritzea…), **hanka sartzeari beldurra** ere nabarmenduz.

#### › Asimetriek eragindako beldurrak

Asimetria diferenteak ematen dira taldeetan: berri eta beteranoen artekoak, talde batzuk

onartuak ez izatea, zentro eta periferia (bazterretakoak, gutxiengoak/minoriak); pertsonalki, taldean edo proiektuan gutxiago edo gehiago sentitzea, boterea galdu edo botere gabe sentitzea, hizkuntza asimetriak, menpekotasunak sortzea edota konpromiso maila ezberdinak. Eta arrazoiak konplexuak dira, **jakintzen asimetriei beldurra** esaterako, batzuk besteak baino gehiago dakitelako baino, jakintza mota batzuk gehiago baloratzen direlako (diskurtsiboa, arrazionala, hitz potoloz osatua) ematen da.

Beldur hauek aliantzetan azaleratzen direnean, **borroken arteko zapalkuntzak edo hierarkiak sortzeko beldurrarekin** lotzen da, baita **aliantzen noraezarekin** ere. Alde batetik noraeza edo zehaztasun eza aipatzen da, elkarlana zama modura ulertuz, eta bestetik, helburuen arteko asimetria edo desadostasunari dagokionekoak (inkoherentziak, helburu diferenteak…).

### › Erosotasun gunea hausteko beldurra

Beldur hau maila ezberdinetan izan daiteke; egunerokoan aintzat hartzen ez dugun zapalkuntza batekiko begirada pausatzeak eragiten duen **barne astindua eta era kolektiboan lan pertsonala egiteari beldurra** (norbere burua zalantzan jartzeari beldurra), **norberaren** (gutako bakoitza edo gure eragile zein borroka esparrua) **identitatea kolokan sentitzeko beldurra**…

Aliantzei begira, gure **proiektuaren ezaugarritzea aldatzeak** sortarazten digu **beldur** hori: instrumentalizatuak izango garen (aliantzan funtzio zehatzak betetzera mugatuko garen), printzipioak galduko ditugun, besteei gurea inposatuko diegun, besteek berea inposatuko diguten, beste batzuk baldintzatuko gaituzten, bazterrera mugituko garen… Baita gure **ikuspuntua eraldatzeari beldurra** ere.

Ni eta taldearen arteko harremanetik, zein Proiektu politikoaren inguruan sorturiko gune erosoak hausteko beldurra ere azaleratu da **(aldaketarako beldurra, ezezagunari beldurra),** konpromisoak hartzeak sorturiko koloka edota segurtasun faltatik. Honez gain, aliantzen kasuan, kide bakoitzaren **erritmoei eta inplikazio mailei lotutako beldurrak** ere nabarmendu dira, ibilbidean bat ez egitea edota denboraren kudeaketa ezberdinak izatea adibidez.

### › Ardura eta konpromisoa kudeatzeak eragiten dituen beldurrak

Erabakiak hartu beharra, erabaki egokiak hartu nahia, segurtasun ezak, gauzak ez kontrolatzeari beldurra, gaizki aritzeari beldurra, espektatibak ez betetzeari (taldearenak eta norberarenak), erresistentziei beldurra…

### › Proiektua eta prozesuaren arteko oreka-desorekei lotutako beldurrak

Ezarritako helburuak betetzeko konpromiso eta aurre-plangintzari begira, zurrunak izan nahi ez, baina helburuak bete beharrak dakarren desoreka, prozesuan taldeak eta kideek egiten duten bideari arretaz begiratu eta malgua izan nahia… non dago oreka? Denok kokatzen dugu leku berdinean? Prozesu eta proiektuaren arteko beharrezko tentsio hau kudeatzeko zailtasunak eragindako beldurrak, frustrazioak eta sentimenduak.

Aliantzetan ere, nabarmen agertzen diren beldur eta zalantzak dira, proiektu bakoitzaren ezaugarritzearen arabera desoreka





hauekiko eta hauek taldean sortu ditzaketen **inkoherentziekiko beldurra** nagusitzen baita.

### › Dinamika baztertzaileak sortzeko beldurra

Dinamika polarizatzaileek polarizazioa eragiten dute, eta bi muturreko **poloen artean ez daudenak nola aintzat hartu** eta ez ahaztu? Aldi berean, **ez daudenen ikuspegia nola aintzat hartu?**

### › Dibertsitateari (talde dibertsitatea, pertsonak...) beldurra

Ezezagunari beldurra, mesfidantzak, ez ezagutzak, gurea galdu, gu bidean galdu, dibertsitatea eraginkorra den, aniztasunari berari beldurra…

Kasu hauetan, baita aliantzen kasuetan ere, **talde edota pertsonen inguruko aurreiritziak** izan daitezke oztopo, eta kasu batzuetan, aurreiritzi hauek eragingo dituzten jarrera eta egoeren beldur gara (aliantzan daukagun papera eta aurreiritzia, besteak gugatik duten ikuspegia…).

### › Talde dinamikei lotutako beldurrak

Taldean integratua ez izateari, boterea posizio batzuk uzteari, besteek gutaz espero dutena ez betetzeari, jendaurrean agertzeari…

### › Oreka bilatze lanetan sortutako beldurrak

Teoria eta praktikaren arteko desoreka, egin – pentsatu – sentitzearen artean, zaintzaren oreka Ni – Talde – Proiektuan, nazionala eta lokalaren arteko desoreka, erabakiak nola hartu, parte hartzea nola orekatu, proiektua eta prozesuaren arteko oreka…

## 2.2.2 Non sortzen dira beldur horiek? Zein da euren norabidea?

Sailkapen hau oso subjektiboa izanik ere, badakigu beldurrak nondik datozen ulertzeak lagunduko digula hauei aurre egiten; jakin badakigu gure beldur intimoenek ere badutela izaera soziala eta zeharkatzen gaituen sistema honek sortu dizkigula.

Hori dela era, egoera makroetatik datozenak eta egoera mikroetan, hau da, taldeetan, birproduzitzen ditugunak banatzen saiatu gara.



## Maila makroan sortzen direnak

| KANPO FAKTOREEI LOTUTAKO BELDURRAK<br>*Beldur batzuk inguruarekin, sistemarekin edota egoerarekin lotzen ditugu, gu baino indartsuagoak diren kanpo faktoreekin* |
|---|
| Errepresio politikoari beldurra |
| Patriarkatuak, kolonialismoak eta kapitalismoak egiten duten beldurraren erabilera, gizartearen kontrola bermatzeko; kontrolerako tresna bezala |
| Eroso bizi garenaren ideia dugunez, beste bizimodu alternatibo eta “ez horren erosoei” beldurra |
| Gure ikuspuntu/kosmobisio mendebaldarretik beste kulturekiko inposizioak |

| TALDEKO EGITURATIK KANPO DAUDENAK<br>*Taldetik kanpo egon eta taldearengan zuzenki eragiten duten beldurrak maila makroan kokatuko ditugu, kanpo faktore ugariren ondoriozko beldurrak baitira* |
|---|
| Ni-aren barruan eragiten duten beldurrak (Niari, ingurune hurbilari)<br>• Eremu pribatuan beldurraren ondoriozko sentimenduen kontrola (modu intimoan barneratutako beldurrak, konfiantza faltak, epaiak, ona eta txarraren arteko dikotomia)<br>• Nire jardun politikoak gertukoengan duen eragina<br>• Gure aldarrikapenek herrian giro txarra sortzea |
| Gune informalek sortu ditzaketen botereak |

## Maila mikrotik datozenak

| PROIEKTU POLITIKOARI BEGIRA, TALDETIK KANPORA SORTUTAKOAK<br>*Beldur hauek proiektu politikoari zuzenki lotuta ageri dira, honen etorkizunari edota honen aurrean besteek duten iritziari lotuz* |
|---|
| Zurrumurruei beldurra |
| Belaunaldi berriek borrokan ez jarraitzea<br>• Belaunaldien arteko hausturak, transmisio falta<br>• Proiektu politikoa jendarteratzeko orduan herritarrei edukia ez heltzea<br>• Urgentziaz jokatzeari beldurra, proiektuaren transmisioa bigarren mailan utzita |





| KANPOTIK TALDERA DATOZENAK<br>*Taldetik kanpo emandako egoerek taldearengan izan dezaketen eraginean oinarritzen diren beldurrak* |
|---|
| Bestelako guneetan ematen diren hausnarketak eta bertan pilatzen diren ezagutzak eta esperientziak taldekideei egoki transmititzeko gaitasun ezari beldurra |
| Eremu nazionalean finkatutako proiektu politikoek eremu lokaletako proiektuak baldintzatzeari beldurra |
| Desorekak: Taldekideen egoerak proiektuan eragiteari beldurra; edota, kontuan ez hartzeari beldurra |
| Finantzazio bide berriek eragin ditzaketen ondorio negatiboei beldurra; diruaren dependentziak adibidez |

| TALDEAK BERE BAITAN DITUENAK<br>*Taldearen barruan ematen diren harreman eta egoerei zuzenki lotutako beldurrak* |
|---|
| Zaintza (auto-zaintza, elkar-zaintza)<br>• Zaintzarekin lotutako orekak, proiektu politikoaren mesedetan norbanakoak eta taldea ez zaintzea<br>• Taldekideak baztertuta sentitzea<br>• Proiektuan gauzak gustuz egin ordez, sakrifizioaren kulturan oinarritzea<br>• Bakoitzak bere eredua “hoberen” bezala aurkeztea eta elkarri “mokoka” aritzea |
| Asimetriak<br>• Konpromiso maila: Taldekide garenok bidean erretzea<br>• “Ez dakit nahikoa”, “besteek nik baino gehiago dakite”<br>• Beti “buruzagi” baten pean lan egitea beharrezkoa izatea<br>• Taldean esaten den guztia ez partekatzearen beldurra<br>• Polimilitantziaren eraginen beldurra<br>• Teoria eta praktikaren arteko desorekak |
| Proiektu politikoari begira<br>• Proiektua gauzatua ez ikusteari beldurra<br>• Proiektu politikoa eroriz gero, harreman pertsonalak hausteko beldurra<br>• Proiektu politikoa partekatzen ez dugula konturatzeari beldurra<br>• Proiektu politikoa zalantzan jartzeari beldurra<br>• Buruan utopia izan eta bideari garrantzirik ez ematea |



## 2.2.3 Nola lotzen dira beldur hauek euren artean, ze aldagai lotuz?

Aipatu bezala, hirugarren asteburuan, Goñin, beldurrak triangeluaren irudia erabiliz hiru dimentsioen artean kokatu genituen.

Lehen asmoa proiektu politikoarekin loturiko beldurrak Nitik edo Taldetik gertuago zeuden jakitea izan zen, dimentsio honi beharrezko garrantzia emateko. Hala ere, ariketak dinamika ezberdin bat hartu zuen eta beraz, **beldur bakoitzak hiru dimentsio hauei begira zuen lotura zein zen irudikatzea lortu genuen.**

Honetarako, parte hartzaile bakoitzari aurrez aipatutako beldurretako bat banatu genion, eta triangelu batean kokatu behar izan zituzten, Nitik, Taldetik eta Proiektu politikoak ardatz gisa hartuz hauekiko zuten distantziara.

Ariketa honetan, **beldurrak orokorrean erdialderantz** jo zuten, Nia, Taldea eta Proiektu politikoaren artean harreman estuak aurkitzen ditugunaren seinale.

### Aliantzei lotutako beldurretan

Beldur hauen artean badira aliantzei loturiko beldurrak ere, esaterako, taldeak bere baitan dituenen artean "proiektua ez gauzatua ikusteari beldurra", "proiektua bera zalantzan jartzeari beldurra"...

Hauen analisia konplikatuagoa egiten da aliantzen edo elkarlanen inguruan hitz egiten dugunean. Taldean "ni" pertsona banaiz; aliantzen bilera batean "nia" nik ordezkatzen dudan taldea izango baita. Nire kolektiboan "taldea" gure osotasuna bada; aliantzan beste eragileekin batera sortu dugun taldeen taldea izango da. Eta "proiektu politikoa" jada ez da nire taldearena baizik eta koordinakunde horrek adostuko duena.

Beraz, triangeluaren analisia egiterako orduan, beldur bakoitzari lotutako dimentsioak zeintzuk diren ulertzea ere oso garrantzitsua da, ondoren, batetik edo bestetik gertuago edo urrunago zergatik dagoen ulertzeko.

Ondorio orokor gisara, maila bakoitzean bizi duguna zuzenean besteekin erlazionatuta dagoela esan genezake, eta beraz, beldurrak ekidin edo gainditzeko aurkitu beharreko estrategiak ere taldea, norbanakoa eta proiektu politikoa zentroan kokatuz landu beharko direla. Hau da, Taldearen beldurrek, nahitaezean eragiten diote subjektu bakoitzaren beldurrei zein talde honen baitan dagoen proiektu politikoari.




# 3. blokea: askatzen

## 3.1 Beldurrei aurre egiteko estrategiak.

Beldurrak ez dira gure gune erosoen babeserako sortzen ditugun maskara ikusezinak besterik, geure barruak, taldeak zein proiektuak bere horretan mantendu nahi dituzten ezkutuak. Iraultzarako, ordea, ezinbestekotzat dugu maskara horiek dardarka jarri, berauek eraitsi eta geure barnean eragitea. Era horretara lortuko baitugu Nia, Taldea eta Proiektuaren beldurrak harremandu eta aurre egitea, hots, bidean aurrera egitea.

Deusezte lanak, ordea, ez dira inoiz samurrak. Beldurrak Nitik, Taldetik eta Proiektutik eratorriak badira ere, pertsonak gara gorpuzten ditugunak. Beraz, beldurren eraisketan Niak badu zeregin mardulik. Beldurrak eraisten nahi, jakin eta ahal izan behar da. Hori dela eta, ezinbestekoa da lehenik eta behin nork bere barrura bidaiatzeko adorea hartzea, era horretara, gero ondokoa xixatu ahal izateko.

Hori dela eta, ikastaroaren amaiera asteburuan, Garaionen, maskaren deuseztеari nola ekin lantzen aritu ginen. Barrenean lurrikara beste algara eragin genituen, Taldearen eta Proiektuaren magiari lekua eman eta azken asteburua ahaztezin bihurtuz. Izan ere, Beldurrei aurre egiteko estrategiei dagokionean, bi eremu nagusi banatu genituen, batetik nork bere aldetik egin beharreko lanketa pertsonal bezain politikoa, eta bestetik, herri mugimenduek egin beharreko lanketa, zeinetan ardatz izango diren Nia, Taldea zein Proiektua.

### Fantasiazko munduaz baliatuz: Harry Potterren munduko estrategiak

Bor-Bor(k)-ko azken asteburuko sistematizazio ardatzaren inguruko informazio bilketan jardun zen dinamizazioa egokituko

taldea. Horretarako taldekideek hainbat baliabide erabili zituzten, zehazki beldurraren eta honen kudeaketaren inguruan mintzo zirenak. Norberaren esperientzia propioetatik aterатako ikaspenez ere baliatu ziren, eta norberaren eta ingurukoen jakintza teoriko "adituak" ere kontsultatu zituzten.

Lan horretan zihardutela, gaia lantzeko hainbatetan irakurritako saga bat baliagarria izan zitekeela pentsatu zuen larunbata prestatzen zebilen lantaldeak. Saga hori Joan Katherine Rowlingek idatzitako Harry Potteren saga izan zen. Liburu hauek haur edo nerabeentzat bideratuta daudenaren ustea hautsiz, bertan lantzen diren gaien hausnarketan beldurraren inguruko hainbat klabe ematen zirela pentsatu zuten. Zehazki hauen aurre egitearen inguruko informazioa eskaini zezaketela liburuek. Hemen planteatuko dira bertatik ateratako aukerak, jakinda liburu honek aipatzen dituen gako horiek beste batzuek maila teorikoan ere aipatuko dituztela, edota bestelako hitz batzuekin fantasiazko era batean. Bat, bigarrena edo bestea atsegin duenak, egoerak ulertzeko baliagarria izan daitekeena erabil dezake, talde honetan fantasian irakaspen anitz aurkitu genituen zaila egiten zitzaigun errealitatea ulertzeko tresnak izan zitezkeenak topatuz.

Sistematizazio honetan baliagarria izan zaigunez, gatozen bada aipaturiko mundu honetan murgiltzera:

Harry Potterren munduan sorginak eta aztiak eskolara joaten dira, eta bertan irakasgai ezberdinak lantzen dituzte magiaren munduaren eremu ezberdinak ikasteko asmoz, hala nola herbologia, izaki magikoen zaintza edota edabeen ikasgaia. Beldurra gehien agertuko den ikasgaia "Arte ilunen kontrako defentsa"[5] deituko da, non magiako arte ilunak eta hauen aurreko defentsa nola landu ikasten duten. Magia ilunean izaki ezberdinekin egin daiteke topo, ondo ezagutzen ez badira norberarengan kalte handiak eragin ditzaketenak. Horien artean liburuetan agertzen diren 2 izakik zuzenean norberaren beldurrez hitz egiten digute (erasoa jasaten duenaren beldurrez alegia): Boggart-ak eta Dementoreak. Izaki bakoitza zertan datzan azalduko da eta ondoren nola aurre egin haiei, azkenean beldurraren inguruko gogoeta bat plazaratuz amaitzeko.

**Boggarta:** beldurra eragiten duen izakia da hau. Benetan duten forma zein den inork ez daki, leku ilun eta ezkutuetan bizi dira eta pertsona batekin topo egiterakoan, itxuraldatuko dira. Boggart forma berri hori parean duen pertsonaren beldur intimo eta handienarena izango da. Hau da: niri beldur gehien ematen didana ertzain "beltz" batek neu jotzea bada, ni Boggart batekin topatzerakoan ertzain "beltz" bat izango da Boggart-a eta ni jotzera etorriko da. Boggartak beldurraren bidez gaina hartzen digu, askotan berarekin topo egiten dugunean paralisiaren ondorioz gain hartuko digulako, edota ihes eginez gero, gure atzetik etorriko delako gu gain hartzeko.

Esan bezala izaki ilunen aurrean defentsa mekanismoak martxan jar ditzakegu, eta Boggartarekin ez da gutxiago izango. Halako izaki batekin topo egitean, prest izan behar dugu pentsamendu bat: beldur gehien ematen digun hori nola bilakatu dezakegun barregarri. Beraz, aurretik, beldurrik gabe sentitzen garen egoera batean hausnarketa egin beharko dugu zerk ematen digun beldurra berarekin topo egitean entrenatuta egoteko. Boggarta gainditzeko estrategiak bere baitan barnebiltzen ditu, umorea, barrea, ridikulua edota poza. Azken finean beldurra ematen digun hori mamu bat bilakatu beharrean gainditu daitekeen zerbait bezala ikusteko gaitasuna badugu, gainditu dezakegunaren ideia dakarkigu eta lorgarria egiten du. Lehen jarritako ideiari jarraiki, Boggartarekin topo eginez gero, ertzain barregarri bat imajina dezakegu, eta bere kontrako "konjurua"[6](hau liburuaren fantasia munduan) bota. Ertzain barregarri bat izan daiteke, adibidez, txupa-txus jigante bat gure atzetik.



Konjurua botatzeko, edo barrenak askatzeko, (k)-ko kideek lehenik beldur gehien ematen zien hura imajinatu zuten larunbat goizean borobilean zeudela. Ondoren, egoera hori era umoretsu batean imajinatu eta ozen eta altu esan zuten: *RIDIKULUS*! Eta Boggarta desegin zen…

**Dementoreak:** izaki ilunetan ilunenetakoa dugu hau. Liburuan magiako presondegiko zaintzaile figura betetzen duten hauek beldurra, izua eta desolazioa barreiatzen dute doazen tokira doazela. Dementoreak jendearen ilusio eta pozez elikatzen dira, norbaiten ondoan daudenean zoriona xurgatzen dute eta pertsonaren barnean beldurra, desesperantza, desolazioa eta hotza sortzen dute. Dementore bat ondoan izatean pertsonek euren oroitzapen gogorrenak bizitzen dituzte berriro ere euren buruetan, beldurra ematen dien hori gertatuko dela sentitzen dute eta horrela zirimola horren baitan txikitzen eta paralizatzen doaz. Dementoreak orduan, bere harrapakina zokoratua duenean bere energia positiboa sortzen duen hori xurgatu dezake, bere poztasunaren iturria kendu, eta hori liburuaren arabera arima dugu, ahotik lapurtu diezaguketena.

Kasu honetan, desesperantza eta beldurrari aurre egiteko oroitzapen positiboez baliatzen dira liburuko pertsonaiak. Zoriontsu egiten dituen oroitzapenek emandako energian fokua jarri[7], eta Dementore bat gertu sentitzerakoan konjurua botatzen dute: "*Ahaldundu patronus!*"[8]. Orduan baritatik gure energia positibo hori argiz osaturiko animalia batean bilakatuta aterako da, Dementorearengana joan eta hau aldendu egingo du, norberaren botere positiboa jasangaitza baitzaie, *patronusa*. Kuriositate gisa esango dugu pertsona bakoitzaren *patronusak* bere izaeraren araberako animalia forma hartuko duela, eta beraz *patronus* oso anitzak aurki ditzakegula Bor-Bor(k)-ko kideen artean. Eta baita Dementore baten eragin-

5 "Defensa contra las artes oscuras" erdaraz.

6 Liburuan hainbat egoeren aurrean sorgin nahiz aztiek konjuruak botatzen dituzte euren baritarekin; beraien boterea kanalizatzen duen erremintak dira konjurua eta barita.

7 Oroitzapen hori beldurra sentitzen ez dugun momentuetan baliabide ezberdinen bidez ainguratzen badugu (kolore, irudi edo hotsen bidez), beldurra sentitzen ari garela konturatzerakoan errazagoa izango zaigu hauetan pentsatzea.

8 Liburuan "Expecto patronum". Bor-Bor(k) kideek aldatu egin zuten ahalduntzearen ideia azpimarratzeko asmoz. Beldurraren aurrean autodefentsa feminista aldarriarekin bat.



pean egon eta gero liburuan pertsonaiek txokolatea jaten dutela botika gisa; tripa berotu eta arima goxatzen duelako, halaxe eman zitzaizkien bonboiak ikastaroko parte hartzaileei ere!

Harry Potterren sagan hainbat egoera beldurgarriren aurrean idazleak energia positiboa, ridikulua eta maitasuna (adiskideen artekoa bereziki) erabiltzeko aldarria egiten du. Herri Mugimenduek bizitzen dituzten egoera gogorretan askotan erabiliak direla aipatu zen Bor-Bor(k)-n, baina egiten al da honen erabileraren nahikoa apologia? Atal hau galdera horri erantzuteko asmoz sortu zen.

## Estrategiak batzen: herri mugimenduetatik herri mugimenduetara

Garaionen landutako beldur zein aurre egiteko estrategietatik ondorioztatu genuen beldurrei aurre egiteko Nitik abiatutako lanketa taldera zein proiektura mugitu beharra dagoela. Behin eta berriro errepikatzen den bezala, beldurren lanketan ere ezin dira zaintza hirukoitzaren erpinak isolatu. Izan ere, elkarren arteko harreman orekatuan datza sekretuetariko bat.

Ikastaroan agertutako estrategia esanguratsuenak edota erabilgarrienak taula batean multzokatu eta eskuragarri jarri nahi izan ditugu. Horretarako, taulako sailkapenean bildu ditugu zaintza hirukoitzaren hiru erpinak biltzen dituzten estrategiak. Taulan erabilitako sinbologiak estrategia nola jorratuko den edota jorratu daitekeen adierazten du. Nolakotasun hori zehazteko mugimendu sozialetako elementu hauetan jarri dugu arreta:

- Norberak/Ni-ak landu beharreko estrategiak: (N).
- Taldean jorratu beharreko estrategia (T).
- Proiektua-ren baitako estrategia edo estrategia politikoa (P).





| BELDURRAK | AURRE EGITEKO ESTRATEGIAK | NONDIK |
|---|---|---|
| **Desadostasunari beldurra** | *Alteritatea* lantzea (besteen lekuan jartzen saiatzea, beste kokapen politiko edo jarrera bat izatean saiatzea), eta diskurtsoa jarrera positibo eta eraikitzaileetik abiatzea. | N, T, P |
| | Disensua bera erronka bezala planteatzea. | T, P |
| | Erabaki ez baztertzaileak hartzeko beldurra: denboraren erabilera ez baztertzailea eta eraginkorra egin. | N, T |
| **Asimetriak eragindako beldurrak** | Testuingurua kontuan hartuz, kontzeptuen erabilpen arretatxua egitea. | N |
| | Mailakatzea beti egongo dela onartuz, terminologia/komunikazioan arreta jarriz, talde bizitzan terminologia normalizatzen joatea. | N |
| | Terminologiarekiko galdu sentsazio eta ezinegona sentitzea: arazoa esplizitatzea, azalpenetan adibide zehatz/lurreratuak jartzea, zerbait berria edo garrantzitsua denean ezer jakintzat ez ematea. | N, T |
| **Erosotasun gunea hausteko beldurra** | Testuinguru bakoitzean dugun botere posizioarekiko autokritikoak izatea. | N, T |
| | Botere hitza lurreratzea (boterea > eragiteko gaitasuna); eragiteko gaitasuna banatzea. | T |
| | Bakoitzaren beldurrak konpartitzea. | N, T |
| | Proiektua indartzea, proiektu estrategikoak garatzea. | T, P |
| **Ardura eta konpromisoa kudeatzeak eragiten dituen beldurrak** | Aurretik prestatzea eta balorazioak egitea. | N, T, P |
| | Bileretako lanen banaketa errotatiboa egitea (dinamizatzailea, denboralizatzailea, zaintzailea, idazkaria). | N, T, P |
| | Hiru mailetako autoestimua lantzea. | N, T, P |
| | Parte hartzeko arauak aurrez ezartzea: Nola erabaki zer erabaki bezain garrantzitsua da. | N, T, P |
| **Proiektua eta prozesuaren arteko oreka desorekei lotutako beldurrak** | Bakoitzaren konpromezu maila unero berresteko espazioak sortzea. | N, T |
| | Proiektua sostengatzen duen taldearen lanak guztien artean horizontalki egiteko konpromezua hartzea. | N, T |
| | Egoera mahai gainean jartzea. | N, T |
| | Zaintzeko gai izateko, lehenik eta behin gure burua zaintzeko gaitasuna izan behar dugu. | N |

| | | | |
|---|---|---|---|
| **Dinamika baztertzaileak sortzeko beldurra** | | Bileran etiketak kendu eta denok berdintzea | N, T |
| | | Parte hartze orekatua sustatzeko dinamikak bermatzea. | N, T |
| | | Proiektu politikoak aurrera jarrai dezan, taldearen eta norbanakoen beharrizanetan oinarritutako kohesioa bilatzea. | N, T, P |
| **Dibertsitateari beldurra** | Gatazkei beldurra | Alteritatea lantzea eta diskurtsoa jarrera positibotik eta eraikitzaileetik abiatzea. | N, T, P |
| | Gatazkak pertsonalizatzeari beldurra | Gatazkak bitartekarien bitartez kudeatzea. | T |
| | | Gatazka sor dezakeen hori eremu informaletan lantzea konfrontazioa jaisteko helburuz. | N, T |
| | | Inpultsibitatea kontrolatzea. | N |
| **Talde dinamikei lotutako beldurrak** | Ordezkari izateko beldurra | Ordezkari/banakoen arteko botere harremanak azaleratzea. | N, T |
| | | Lanen banaketa errotatiboa egitea bileretan (dinamizatzailea, denboralizatzailea, zaintzailea, idazkaria). | T |
| | | Bileran hartu diren erabakiak partaide guztiek argi izatea; bilerako erabakiak aktan zehatz biltzea. | N, T |
| | | Ordezkarien bileran talde izaera lantzea. | N, T |
| | Taldean integratua ez egoteari beldurra | Jende berriak / parte hartze baxua dutenen parte hartzea sustatzeko dinamika zehatzak aurrera eramatea. | T |
| | Publikotasunari beldurra | Zuzendaritza eredua problematizatzea | P |
| | Emakumeak botere-gunearen parte izateko beldurra | Prozesu feminista aurrera eramatea. | N, T, P |
| | | Emakumeekin taldean bildu eta emakumeen arteko aliantzak sortzea. | P |
| **Oreka biltze lanetan sortutako beldurrak** | | Erosotasunetik atera eta deserosotasunetik eraiki. | N, T, P |
| | | Ni naiz, zu zarelako. Zu zara, gu garelako. | N, T, P |
| | | Beldurra gure gizartearen mehatxua da. | N, T |





## 3.2 Estrategia hauei erresistentziak

Ikasturte honetan, beldurrak definitu eta sailkatu ostean, hauei aurre egiteko estrategia zerrenda luzeak eraiki ditugu; gure buruari beraz, hirugarren galdera egitea falta zitzaigun.

*Beldur hauei aurre egiteko (gorputzetik, mugimenduetatik eta batez ere proiektu politikoetatik lantzeko) estrategia ugari azaldu badira, nola gainditu baldin badakigu, zergatik ez ditugu martxan jartzen?"*

Hau izan zen Goñiko asteburuaren ostean botatako galdera, foroan erantzuten saiatu ginena. Galdera honen lanketa sakonagoa egin genuen Garaionen, azken asteburuan, ikastaroa bera denbora lerroan irudikatuz eta beldurra zerekin, ze sentsazio edota ze hitzekin, lotzen genuen ere landuz.

### Beldurren distirak, izarrak: Boterea, pribilegioak eta desirak

Galdera honek ez du erantzun errazik, edo behintzat agertzen zaizkigun erantzunak ez dira erosoak. Beldurrei aurre egiteak ausardia eskatzen du, eta beraz beldur berriak ere sortzen ditu, baita erresistentziak ere.

Aldaketek sortuko dituzten egoera berriek erresistentziak sortzen dituzte, ezingo diogu beraz, guztiari beldurra deitu. Erresistentzia horien jatorriak hamaika dira: beldurra, mina ekiditea, berria edo ezezagunari mesfidantza edota desio ez ditugun egoeretan kokatzea (koloka, ezezaguna, ez ulertzea, berria).

Erresistentzia horiek **botere, pribilegio eta desiretan** sortzen direla aipatu dugu behin eta berriz, batzuetan Nian, besteetan Taldean, besteetan Proiektu politikoan. Aldi berean, esan genezake erresistentziak sineskera bati begirako erresistentziak direla. Zein da, ordea, erreakzio uholde hori sortzen duen sinesmena? Gure ondorioen arabera, nork bere pribilegio edo botereak zalantzan jarri, aldatu edota galtzearen ustea da oinarrian dagoena.

Lehen puntuan aipatzen denari jarraituz, beldurra autodefentsarako mekanismoa ere bada, galtzea ekiditeko, mina ekiditeko zein arriskua ekiditeko prestatua.

Mekanismo hau gure bizipen eta ibilbidearen arabera aldatuz joan da historian zehar (historikoki datorkiguna, norberaren egunerokotasuna, bizipenak, heziketa, hazte prozesua…), eta aldaketa honetan beldurra sortzen digun erreakzio naturala ere eraldatu egin da, beldurra pribilegioak galtzeak, maitatua ez izateak, desio dugun hori ez edukitzeak.. sortuz, eta behin baino gehiagotan, materialera, posesiora bideratuz.

Kasu hauetan, gure gorputzen eta buruaren arteko talka ematen da, beldur fisikoa eta beldur arrazionala (gure balioen araberako beldurrak, zerbait galtzea…) bananduz. Beraz, **beldurraren oinarri soziala** (mundua nola eraiki den, pribilegio sistema…) ere aipatu beharrekoa da, gure gorputz eta buruetan kokatu eta gu geu geure beldurrei aurre egiteko erresistentzia nagusi bihurtuz.

Hausnarketak hausnarketa, beldur eta erresistentzien arteko lotura bezala ulertu dugu jabetzaren kontzeptua. Izan ere, zerbaiten faltak beldurtzen gaituenean bihur gaitezke posesibo. Materialismo horren adibide dira honako erreakzio kateak: alde batetik, pribilegioak galtzeak beldurtzen bagaitu, erresistentzia pribilegioen posesioetan ezar dezakegu; bestetik, maitatua ez izateak beldurtzen bagaitu erresistentzia ustezko maitasunaren posesioan ezar dezakegu; horietaz gain, desio dugun horren jabe ez izateak beldurtzen bagaitu, erresistentzia desio horren jabetzan ezar dezakegu.




Bide honetan agertu zaizkigu ez-ulertzeak, blokeoak, bekoki zimurtuak eta lainoak, baina baita itxaropenak eta irabazteko gogoak ere. Gainera, talde indarra eta artizarra erabili ditugu gaiari zukua atera eta aurrez aurre begiratzeko; hala ere, konturatu gara askotan nahiago izaten dugula bestaldera begiratu. Zergatik? Ez dugulako **indar nahikorik**, ekarriko dituen ondorio mingarriei begira gaudelako edota egoera aldaketa eragingo duelako.

## Irribarreak, malkoak haserreak: emozioak baztertzeko joera

Erresistentzia horiek nola irudikatzen ditugun, hala bizitzen ditugu. Batzuetan eztabaidak blokeatu egiten dira, gaiak ezkutatu egiten dira, ridikulizatu egiten dira, garrantzia kentzen zaie, biktimizazioa ematen da, "hurrengorako" uzten dira, jarrera pasiboak agertzen dira… Izan ere, hamaika dira prozesuei oztopoak ipintzeko bideak. Beraz, prozesuak abiatu aurretik estrategia horiek izendatu eta kontuan izatea garrantzitsua izaten da.

Gure eztabaidetako bat terapia-politizazioaren inguruan izan da. Eztabaida horretan konturatu ginen **beldurrei Herri Mugimenduetan ere modu despolitizatu/indibidualista batean heltzen diegula**; eta pisuzko argudioa da, terapia egiten dugula esaten dute batzuk.

Zenbait mugimenduren kasuan, emozioak eta beldurrak baztertzeko joera izaten da, baita arrazionala eta "objektiboa" ez dena ere; horrela mekanismo horiek eraikitzen ez duten tresna gisa ulertzen dira sarri. Beraz, maiz, "objektiboa" den horretan geratzen gara, teoriak, proiektuak horren gainean eraikiz, emozionala dena baliagarria ez dela sinistuz.

Bide honetan, emozioak baztertzen ditugu, norbanakoaren zein taldearenak diren emozioak, eta beraz, hankamotz gelditzen gara, proiektu politikoaren oinarri diren subjektuen sentsazio eta emozioak baztertzen ditugulako (ez dira existitzen, ez dira garrantzitsuak sineskeran). Horrela, taldekideak galtzen goaz, erretzen, motibazioa galtzen, gatazkak (barnekoak zein taldekoak) baztertzen, gutxiesten, zaintza kafe eta pastetara mugatzen…

Beraz, **emozioez hitz egiteak** ere beldurra eragin dezake, eta horrek terapia gisa ulertzea ere ekar dezake; kutsu politikoa kenduz, edo ez hitz egiteko aitzakia bihurtuz.

## Etengabe eraldatzen doazen beldurrak

Ibilbideek ere erresistentziak sortzen dituzte, batzuetan **aurreko esperientziek, aurreiritziek**, sortzen dituzte berezko mugak edo barrerak. Beste kolektibo edo pertsonekin izan ditugun arazoak, beldurrak gaizki kudeatu izanak, beldurrak kudeatzen saiatu eta laguntzarik jaso ez dugunean…

Ez da ahaztu behar, **kudeaketa txarra** egiteak sortzen duen bertigoa, hobeto da bertan behera uztea? Hobe kasu egitea? Hobe guztiarekin apurtzea? Ezagutzen ez dugun beste aukeraren bat ere badago? Helburua zein da? Adibidez, gauzak konpontzea ezinezkoa dela erabaki daiteke prozesu baten amaieran, edo taldea indartuta ateratzea helburu moduan badugu ere, amaieran taldea apurtzea. Gure arteko ohiko ***buenrollismoaren*** apurketa erresistentzia iturri garrantzitsu bihur daiteke.

# 3.3 Nola gainditu erresistentziak?

Erresistentzia ugari daude gure estrategiak aurrera eramaterako orduan, eta hauen eragina ikaragarrizkoa dela ondorioztatuz azken asteburuan erresistentzia hauek identifikatzen saiatu gara.

Hirugarren puntuan, beldurrak sailkatzerako orduan, hirukiaren hiru ardatzen arteko lotura etengabea dela aipatu dugu, eta beraz, estrategia ezberdinak pentsatzean hiru ardatzak kontuan hartu behar baditugu, ondorioztatu genezake, erresistentzia hauetako edozein puntu batetik sortzean (Nitik, Taldetik edota Proiektu politikotik) besteetara ere eragiten duela.

Hala ere, pauso bat haratago joan nahi izan dugu, erresistentzia hauek ere nola gainditu genitzakeen hausnartuz.

## Taldea definitu, birpentsatu

Beldurrak antolatu ditugun bizitzaren arabera sortuak dira, gu dominatzeko sistemak berak sortuak. Taldea–proiektua momentuan eta kideen bizipenen arabera eraiki bada, dominazio honetatik askatzea lortu genezake **konfiantzazko eremuak sortuz.**

Taldeak birpentsatzeko beharra izan dezakegu, batzen gaituena eta kolektiboan daukagun aniztasuna behatuz.

**Batasuna, aniztasuna eta blokeorik gabeko autonomia** irizpide gisa hartuz eta hiru dimentsioak kontuan izanik (kideak, taldea eta proiektu/borroka), **mugimenduaren osasuna bera bermatzeari** ekingo diogu.

Modu honetan, bakoitzaren sentipenetatik eta kolektiboaren beharretatik eraikiko dugu taldea, bakoitzaren bizipenak presente izanik. Berrikuspen hau modu natural batean baina maiztasun batekin egiteko beharra izango dugu, beldurrak eta erresistentziak etengabe eraldatzen ari direla aipatu dugulako.

## Konfiantza esparruak sortu

Erresistentzia hauek taldean kokatzen badira (norbanako konkretuen sentsazioak, ibilbide historikoaren pisua…) **beldurrak elkarbanatzeko eta indarrak** hartzeko eremuak sortu daitezke, honetarako **une eta espazio egokia**k aurkituz.

Esparru hauetan bakoitzaren **desirez** zein sortu daitezkeen **botere harremanez hitz egin** daiteke, erresistentzia nagusi gisa definitu baititugu.





## Gatazka eraikitzeko tresna gisara ulertu

Gatazkari beldurra izan da identifikatu den beldurretako bat, honek galera edota berriaren aurrean mesfidantza ekar baitezake.

Gatazka eraikitzaile gisa ulertu beharko dugu, "gauzak konpontzen", "egoerei irtenbidea ematen" tematu beharrean ibilbidearen eta etengabeko berrikuspenaren parte dela ulertuz. Proiektuak, taldea birpentsatzeko tresna ere bada.

Beraz, taldean sortzen diren estrategien baitan, gatazkak lantzeko estrategiak ere sortu beharko dira, konfiantza guneetan kokatuz eta behar izanez gero bitartekariei laguntza eskatuz.

## Bidea vs helmuga

Gure herri mugimenduen osasuna erdian jartzen dugunean, etengabeko berrikuspen baten beharra dagoela esan dugu, gure barne aniztasuna, elkartzen gaituena… zer den eta nola gauden/dauden errepasatuz.

Garrantzia zeri ematen diogun horretan kokatuko da norberaren, taldearen edota proiektuaren arrakasta ere, arrakasta ibilbide osoan edota arrakasta soilik helmugan.

# 3.4 Beldurren gogoeta osteko ondorioak

## Edukiaren inguruan esan nahi duguna

Esperientzien sistematizazio honen amaierara iritsi bazara, jaso dituzu gure ekarpen garrantzitsuenak, baina hau ez da hemen amaitu, joango gara gaiaren inguruan gehiago gogoetatzen eta bidean ikusiko dugu elkar. Bidearen hasiera NTP triangeluarekin egin bagenuen ere, prozesuaren amaieran gaiari dagokionean triangeluko elementu bakoitza beste triangelu batekin uztartzen dela ulertzen dugu, eta horregatik, hiru eremuetan hausnarketa egin eta hiruen zaintza egitea aldarrikatzen dugu. Esandakoa islatzeko asmoz sortu dugu jarraian dagoen irudia:




Puntu honetan, gure mugimenduen zein proiektuen ibilbidearen aitortza egitea ezinbestekoa da, ibilbideak egiten gaituelako kolektibo bizi. Ibilbidea bera osasuntsua bada, mugimendua bera osasuntsua izango da, eta "helburuak ez betetzeari" edota "proiektua aldatzeari" dagokion erresistentziak eraldatzea lortuko dugu, bidea bera helmuga bezain desiragarri eta garrantzitsua bihurtuko delako.

Izan ere, ulertzen duguna da norberaren osasun lanketa baten bidez lortuko dugula talde osasuna eta ondorioz, gure proiektuak era osasuntsuan aurrera eramatea; beldurrak izendatuz, gure nahiz besteen baitan dauden erresistentziak argitu eta berauek gainditzeko estrategiak diseinatu eta praktikan jarriz.

Ateratzen dugun beste ondorioetako bat Herri Mugimenduetan gai honen inguruan gutxi

hitz egin eta lantzen dela da, inpresio hori jaso dugu Bor-Bor(k)-ko kide ezberdinen gogoetak entzun eta jaso ondoren. Gainera garaien arabera beldurren gaiak pisu eta forma ezberdinak hartu dituela ikusi izan dugu; hala nola, konfrontazio egoeran ausardia mota konkretu batzuen erakustaldiak egiteak garrantzi gehiago izan du, eta (nahiz eta talde honi hala ez iruditu, eta dokumentu honek kontrakoa defendatu) beldur erakustaldiak ausardia faltarekin lotu izan dira garai horietan. Bestalde, fase eraikitzaileagoetan, beldur azaleratzeak askotan suntsitzailetzat hartu dira, deseraikitzaileak balira bezala, eta honek hauen azaleratzea zaildu duela antzeman dugu.

Guk honen aurrean aldarri bat egin nahiko genuke: prozesuen zergatiak ulertzea sendagarritzat jotzen dugu, osasuntsutzat beraz, eta aldi berean iraultzarako erreminta baliagarria dela uste dugu, gako asko ematen dituelako.

## Bidearen inguruan esan nahi duguna

Dokumentu hau osatu dugun lantaldean gogoeta anitz egin ditugu bai beldurren inguruan, euren esanahien inguruan, nola bizitzen ditugun hauek Herri Mugimenduetan… Prozesu honetan asko ikasi dugula esan genezake; asko ikasi dugu beldurren inguruan, baina baita ere esperientzien sistematizazioaren inguruan eta honelako dokumentu bat sortzeak suposatzen duenaren inguruan. Gogoetatu eta bidean ikasitakoak helarazi nahi dizkizuegu ataltxo honetan.

Alde batetik esperientzien sistematizazioaren garrantziaz ohartu gara, izan ere dokumentu honi esker, ikastaroan zehar jorratutako gai horren ingurukoak jaso ditugu eta guztiari forma eman diogu, zentzu bat eman eta erreferentzia bat daukagu gaiaren inguruan zalantzak edo jakin-minak ditugunean kontsultatzeko.

Bestalde, prozesuak erakutsi digu gai honi kide guztiek ez diogula garrantzi bera eman, eta gainera beldurrak lantzeko hautua taldean eginda ere, taldean bertan lanketa egiterako garaian erresistentziak topatu ditugula. Hainbat taldekidek (beldurren gogoeta asteburuan) terapia egitera joan ez zirela adierazi zuten ozen (arrazionaltasuna eta emozioak parez-pare elkarren kontrako jarriaz bezala), eta beste batzuk beldurrak lantzeko arima irekitzerako garaian biluzteak erreparoa ematen ziela argi utzi zuten.

Hala ere, ikastaroa amaitzerako garaian talde hau osatu zen bezala, beste talde bat osatu zen beldurrak lantzeko asmoz, baina era artistikoago batean egitekotan geratu ziren. Dokumentu honetan dagoen edukiari heldu eta sormen proiektu bat abiatzeko asmoa adierazi zuten hainbat kidek, euren bidea abiatzekotan dira, emankorra izatea opa diegu, nola ez!

Azkenik jakinarazi nahiko genuke dokumentua osatzerako garaian izan ditugun zailtasunak eta honen aurrean etorkizuneko sistematizatzaileei eman nahi dizkiegun gomendioak, sinpleak izan arren, guk zenbait jarraitu izan bagenitu erraztasun gehiago izango genituzkeela uste baitugu. Hala nola, zailtasunei dagokienean, dokumentua osatzeko taldetxoak egiterakoan bakoitzak berea jorratzeari ekin genion hasieran eta honek elkarren artean lotura izatea zaildu zuen. Bestalde, zeregina denboran zehar luzatzeak guregan zalantza eta beldurrak sortu zituen, azkenean kolektiboa eta gure lantaldearena zen edukia bereizterako garaian gauzak norenak ziren argi ez edukitzea eraginez. Honi gehituz taldea hasiera batean ezegonkorra izan zela, eta denek denbora bera eskaini ahal ez geniola, prozesua ere luzatu egin zen, eta ondorioz, momentuko motibazioan sortutako taldea egunerokotasunaren ondorio, gutxitu egin zen. Are gehiago, ikastaroaren amaieran kide gutxi geundela kontuan izanda, eta nekea bidelagun, kide askok elkarren artean





sortutako materiala landu nahi ez izatea ekarri zuen, konprometitu nahi ez izatea.

Hau guztia esanda, helarazi nahi ditugun gomendioak honakoak dira:

- Garrantzitsua iruditzen zaigu lehenengo bileran taldea osatzen duten kide guztiak egotea, eta honela konpromezuak hartzerako garaian elkarren berri zuzena izateko aukera izatea, eta beraz, zintzoagoa izatea erraztea.
- Lehen bilera horretan lehentasunak markatzea garrantzitsua dela iruditzen zaigu eta kronograma kolektibo nahiz pertsonal bat marrazten saiatzea.
- “Teknotresnei” dagokienean, hau da, erabiliko diren teknologia nahiz euskarri informatikoei dagokienean, hasieratik eta bidean zehar adostasunak ezartzea garrantzitsua izan daiteke, eta berauek denek erabiltzen dakigula ziurtatzea. Bestalde, dokumentua osatzerako garaian erabiliko den sistematika zehaztea baita ere, hala nola, nola gordeko diren dokumentuak, nola egin zuzenketak, bertsio zahar eta berrien kudeaketa eta abar.
- Kide ezberdinei norberaren zatia helaraztean ohiko izaten da zuzenketak edo oharrak gehitzea, garrantzitsua izan daiteke hau nola egin adostea. Gure kasuan baliagarria izan zen dokumentuak aldatu gabe besteei eskuinean agertzen diren oharren bidez zuzenketak edo galderak helaraztea, honela originala aldatu gabe eta ikasteko edota eztabaidatzeko aukera gehiago izatea ahalbidetuz.
- Bilera momentuak goxotasunarekin txandakatu edo zaintzea garrantzitsua izan daiteke egindako lanarekin gehiegi ez nekatzeko. Beraz, talde osasunari begira, bazkari edo gosariak egitea baliagarritzat jotzen da prozesuan, hau da, ikastaroan egin bezala, momentu informalei daukaten garrantzia eskaintzea.
- Eta pazientzia lagunak, pazientzia, bidea pixkanaka egitea, baina egitea.





# Epilogoa

## Desio eta ametsen izarra

Bor-Bor(k)-n ariketa garrantzitsu eta gogorra egin dugu denok batera…beldurrei begiratzeko ariketa. Ziur galdera mordoa sortu zaizkigula… eta ez dauzkagu berehalako erantzun majikorik. Bidea bera, beldurrak kolektiboki izendatzea bera askatzailea dela deritzogu…

Bizi ditzagun geure beldurrak, lehertu daitezen, egoeraz aldatu daitezen. Beldur onak mugimendua dira, bizitza dira, sentitzen dugunaren seinale dira. Emozioak ditugula dioskute, gorabeheratsuak garela, funtsean ez garela makinak eta besteekiko elkarmenpekoak garela.

Izan ere, zein da beldurrek gure bizitzetako eremu ezberdinetan duten lekua? Gure sentitzeko era baldintzatzen dute? Geure hautuak? Beldurrak muga dira batzuetan? Zein da beldurra, frustrazioa, zoriontasuna eta desioen arteko harremana?

Mugitzen gaituzten beldurrak sua dira, amorrua dira, ilusioa dira, desioa dira. Tximeleta bihurtzen diren *beldarrak* dira, hegan egiteko eta gero hiltzeko eta gero berriz *beldarrak* jaiotzeko.

Beldurretatik ikaskuntza kolektiboa egin dugu… entzun gara, sentitu gara, zaindu gara, baimena eman diegu geure buruei…horrela bada askatu ditzagun gaur eta orain geure desioak. Atara ditzagun desioak norberaren kutxa indibidualetik eta kolektibizatu ditzagun…uxatu dezagun desioak konpartitzeko beldurra, biluzteko beldurra…

Bakoitzak zeruari begira dagoela, bere desio indibidual eta kolektiboetan pentsatu dezala, sentitu ditzala…amets egin. Eta nahi duenak ahots altuan esan ditzala…

*Ratamomoen eskutik, Bor-Bor(K) ikastaro amaieran irakurritakoa.*



# Eranskinak

## 1. Asteburu bakoitzean sistematizazio taldeak ateratako ondorio eta galderak.

### 0. asteburua: Errekaleor

Ardura: BPP.

Egindakoa: Sistematizazio galdera definitu talde guztiaren artean.

### 1. asteburua: Beizama

Ardura: Ratamomoak.

Zentratu ziren:

Herri mugimenduetan ematen diren beldurren identifikazioan, glosario moduko bat egin zuten. Zehazki *"beldur pintzelada potoloak identifikatu ditugu"* zioten. Honela laburtu zituzten:

- Disensuari beldurra.
- Jakintzen asimetriak eragindako beldur edo kikiltzea.
- Erosotasun gunea hausteko beldurra.
- Ardura eta konpromezua kudeatzeak eragiten dituen beldurrak.
- Proiektua eta prozesuaren arteko oreka desorekei lotutako beldurrak.
- Dinamika eskluienteak sortzeko beldurra.
- Gatazkei beldurra.
- Talde dinamikei lotutako beldurrak.

**Moodleko fororako planteatutako galderak** (foroan hainbat erantzun bildu ziren):

- Zuen Herri Mugimenduetan edo oro har EHko herri mugimenduetan beldur horiek daudela uste duzu?
- Beldur horien ispilu den adibide zehatzen bat ezagutzen duzu?

### 2. asteburua: Astra

**Ardura:** Labezomorro arroxak.

**Zentratu ziren:**

Astrako asteburuan sistematizazioaz arduratutako taldea aurten jorratutako lerroan <u>beldurrak gainditzeko estrategien identifikazioan</u> zentratu zen, horretan jarri zen begirada. Honela Ratamomoen taldeak planteaturiko (mugimendu sozialetan gehien antzematen diren beldurrak) zerrendaren baitan, hainbat estrategia plazaratzen dira mugimendu sozial hauetako elementuei arreta jarriaz:

- Norberak/Ni-ak landu beharreko estrategiak
- Taldean jorratu beharreko estrategia
- Proiektua-ren baitako estrategiak edo estrategia politikoak

Hau horrela, beldur bakoitzaren arabera sailkatu zituzten asteburu osoan aipaturiko estrategiak, eta "biblia" moduko bat sortu zuten.

**Fororako planteatutako galderak** (Galdera honek ez zuen foroan erantzunik jaso):

"Beldurrei aurre egiteko estrategien artean, kontuan izanda estrategia batzuk dimentsio pertsonalari, beste batzuk talde dimentsioari eta azkenek dimentsio politiko edo proiektuaren dimentsioari erreferentzia egiten diotela, dimentsio hauen artea lehentasunezko hierarkiak daudela uste duzu? Hau da, uste duzu dimentsio bateko estrategiak lehenetsi beharko liratekeela, ala edozein dimentsioko ezein estrategiak beste edozein estrategiak bezainbeste balio dauka?"

### 3. asteburua: Goñi

**Ardura:** AKK-47.

**Zentratu ziren:**

Proiektu politikoari sortarazten zaizkion beldurrak identifikatzea; besteetan agertutakoak nia eta taldearekin zerikusi gehiago zutela ikusi zutelako. Aliantzen gaian honetarako lehengai piloa izan zuten, baita bestelako eztabaidetan ere.

**Fororako planteatutako galderak** (Galdera honek foroan oso erantzun gutxi jaso zituen):

"Gure ondorio nagusietakoa aliantzekin lotutako beldur ugari dugula da; proiektu politikoak aliantzen beldur dira. Baina era berean, gorputzetik, mugimenduetatik eta batez ere proiektu politikoetatik lantzeko estrategia ugari azaldu dira beldur hauei aurre egiteko. Nola gainditu baldin badakigu, zergatik ez ditugu martxan jartzen?"

### 4. asteburua: GaraiOn

**Ardura:** Mikorrizak.

**Zentratu ziren:**

Azken asteburua sistematizazio gaia lantzeko hartu zenez, sistematizazio zereginak zituen lan taldeak ekintzen aktak jaso zituen, asteburua bera zelako sistematizazioa. Ikastaroaren antolaketari zegokion eran, ez zuten sistematizazio analisirik egin, betebehartzat ez zutelako, eta beraz ez zuten galderarik planteatu.

